# BERSO BERRIAC

## Juan José Alcain-ec jarriac

1
Milla zortzi eunequin
larogueita amairuban
dicha eder bat sortuda
gure inguruban
bersuac formatzia
jarri zat buruban
corputza ez daducat
lengo estaduban
sayatu eguin biat
al dedan moduban.

2
Viva Cabildua ta
Ayuntamentua,
ezperatzen det oyen
consentimentuba
memoriya debilla
au sentimentuba
cerbait itz eguiteco
det pentzamentuba
eguingo banu oyen
contentamentuba.

3
Usurbilco errico
Parroco guria
izan du itzeguiten
abillidadia
errespetua eta
formalidadia
piscabat bajatuba
dauca edadia
izandegu guztizco
predicadoria.

4
Ay gure Erretore
leyal eta fiña,
fedia aumentatzeco
orrec badu griña
sermoi ederra franco
guretzat eguiña
beti empliatu du
bere aleguiña
gu guztiac eguiten
sayatu baguiña.

5
Orain ecarri dizcu
bi Relijioso
sermoi eder oyeri
eguiyegun caso
premiacuac izan
guintezque acaso
oyen laguntasuna
biarda preciso
ondo prebenituta
guasen animoso.

6
Marchuaren amalquian
dirade asiyac
ez ditugu aditu
sermoi itsusiyac
nola predicatutzen dan
daude icasiyac
guizon estudiatu
asco icasiyac
ondo portatudira
Jaunari graciyac.

7
Frai Daniel Bartel eta
frai Andres bestia
asco desiatzen zan
oyec icustia
predicadore charrac
asaldu eztia
pensatu det graciyac
ematen astia
lastima da oyeri
issillic uztia.

8
San Franciscoren seme
estimagarriyac
Aita piadoso bi
dira etorriyac
bete gabe pecatu
grabien neurriyac
orain artu dizagun
bicitza berriyac
icusi ez ditzagun
istillu gorriyac.

9
Bildur gabe juateco
digute otseguiñ
modu obian eciñ
guizonac itzeguiñ
etsayaren mendian
ez dala atzeguiñ
libratzeco moduba
obe degu eguiñ
Jesusen asarria
aplacatu dediñ.

10
Anima garbitzendu
confesiyo onac
ez du ecer serbitzen
bildurrac egonac
ichurrac eguiteco
desiuan danac
engañatuco ditu
confesore Jaunac
Goicuari pegatzen
izango dira lanac.

11
Ar cargu artucodu
zorrotz edo estu
ceñec bere contuba
eman biagu justu
batzuec ucatu ta
beste cembait astu
confesiyo charraquin
ez viciro postu
goico Jueza iñore
engañatzon ez du.

12
Gustora ezbadago
len concienziya
orra orain garbitzeco
conbenienciya
anima badijua
pecatuz jantziya
sufritu biarco du
an penitenciya
inore estu jiraco
aren sentenciya.

13
Pecatu guztientzat
da barcaciyua
millaca izanda ere
comparaceyua
lapurretac biardu
restituciyua
dago confesatzeco
obligaciyua
concebituco bada
obsolbiciyua.

14
Munduban eguiñ arren
chit asco pecatu
cer edo nola diran
esaten necatu
orren gañian dute
asco predicatu
acusatzia eciñ
iñore debecatu
lotsaz edo bildurrez
ez arren ucatu.

15
Espacios ta ondo
eguiñ examiña
artu doloria ta
propositu fiña
damutasunarequiñ
pecatu eguiña
aubaz confesiyua
contuz aleguiña
izan penitenciya
cumplitzeco griña.

16
Preciso ez naiz asi
itzeguiten grabe
ni eznago oraindic
oyec becin trebe
emen sufritutcia
ascoz degu obe
guero izan gaitezen
gloriaren jábe
iñor esta salvatzen
penitenci gabe.

17
Confesiyua eguin da
comulgatutzian
considera dezagun
gueren biyotzian
gure Jesus maitiac
bere eriotzian
sufritu citubenac
aundiac bait ian
gure onagatican
ill zan gurutzian.

18
Bere odolarequiñ
guinduben erosi
pecatutic libratu
Ceruba irabaci
orain acordatzia
ez aldu mereci?
egunero emanez
asco esquer eta graci
ofensa guchi eguiñ da
humildadez vici.

19
Utzi pecaturako
dauden viciyuac
menderatu ez gaitzan
condenaciyuac
eguiñ errezpetozco
conversaciyuac
cumplitu estaduco
obligaciyuac
encargu ori eman
dute Misiyuac.

20
Oyen sermoyetara
allegatu dana
conformatu diteque
Jaungoicoagana
bederatzi urren batian
eguiñ dute lana
confesiyuan ere
asco oyen gana
badute talentuba
Jesusec emana.

21
Descubritu dituzte
fedeco casuac
etorri dira guizon
sustanciosoac
arritu gaitu oyen
itzqueta gozuac
nola umiac eta
ala gurasuac
osasuna diyela
Jaun amorosuac.

22
Oyen sermoi ederrac
ondo aditu ta
orain gustora gaude
manchac garbituta
emendican aurrera
Jauna servituta
conforme egon biagu
arc noiz nai deituta
galtzia sentitzen du
beriac gaitu ta.

23
Iñor ere ez gaude
lecu seguruban
etsayac gau ta egun
beti inguruban
cer peligrotan gauden
eduqui buruban
garbi ta pronto egon
esan dan moduban
encontro charric gabe
sartzeco Ceruban.

24
Jauna ofendituric
gaude sentimentuz
nola itzez ta obraz
ala pensamentuz
emendican aurrera
vici viagu contuz
estali gaitzan bere
bendiciyo santuz
ala guerta dedila
Amen VIVA JESUS.

IMP. DE FERNANDEZ Y DIEGO. — EIBAR.